# PERPAUS KONTZESIBOAK

Perpaus kontzesiboetan menpeko perpausak oztopo edo eragozpena adierazten du; baina eragozpen hori ez da nahikoa perpaus nagusia bete ez dadin. IKUSI OHIKO KASUAK, ETA ARRETA BEREZIA ESKIANI PERPAUSEN ORDENARI:

**ARREN:** aditz-partizipioarekin edo aditz jokatuarekin erabil daiteke:

Baiezkoa:

Normalean gezur asko esaten dituen arren, oraingoan egia esan du.
Normalean gezur asko esan arren, oraingoan egia esan du.

Ezezkoa:

Eguraldi ona egiten ez duen arren, joan egingo gara.
Eguraldi ona (ez) egin (ez) arren, joan egingo gara.

**NAHIZ ETA:** aditz-partizipioarekin edo aditz jokatuarekin erabil daiteke:

Baiezkoa:

*Nahiz eta berandu iritsi garen, oraindik pelikula ez da hasi.*
*Nahiz eta berendu iritsi, oraindik pelikula ez da hasi.*

Ezezkoa:

*Nahiz eta eguraldi ona egiten ez duen, joan egingo gara.*
*Nahiz eta eguraldi ona (ez) egin (ez), joan egingo gara.*

**BALDINTZA + ERE:** aditz jokatuekin baino ez da erabiltzen:

Baiezkoa:

Gaixorik badago ere, etorri egin behar du.
Gorroto handia badiozu ere, berarekin lan egin behar duzu.

Ezezkoa:

Nire liburua ekarri ez badidazu ere, ez naiz zurekin haserretuko.
Landareak ureztatu ez baditugu ere, ez dira hil.

**-TA ERE / -RIK ERE:** aditz-partizipioarekin erabiltzen dira.

*Begiak itxita ere, asmatuko nuke.*
*Argia izanik ere, horrek ez du ezer lortuko.*

***GABE ERE:*** *aditz-partizipioarekin erabiltzen da.*

*Lana egin gabe ere, berdin konbratuko dugu*

**-AGATIK (ERE):** aditz-partizipioarekin erabiltzen da.

Baiezkoa:

*Nornahik esanagatik ere, ez dut zertan egin.*
*Hori eginagatik ere, ez dute zigortuko.*

Ezezkoa:

Jon garaiz ez iritsiagatik ere, ez da ezer gertatuko.
Gure proposamena ez onartuagatik ere, ez dugu etsiko.

**-LA(RIK) ERE:**aditz jokatuekin baino ez da erabiltzen.

Baiezkoa:

*Gaixo dagoela(rik) ere, etorri egingo da lanera.*
*Berandu etorri dela(rik) ere, ez diote errietarik egingo.*

Ezezkoa:

*Poz-pozik geratu ez dela(rik) ere, bere oparia onartu egin beharko du.*
*Egia ez dela(rik) ere, ez dugu ezer esango.*

**DATORRENA DATORRELA:** aditz jokatuekin baino ez da erabiltzen.

Esaten dutena esaten dutela, nik nahi dudana egingo dut.
Dena dela, ez diogu ezer aipatuko.

**GORABEHERA:** izenkin erabiltzen da, aditzik gabe.

Oztopoak gorabehera, egitasmoa burutu ahal izan dugu.
Trafikoa gorabehera, garaiz iritsi ahal izan ziren.